# ZEBARRI

2019/20ko negua

etxebarriko euskaltegiko ikasleek egina

# JASO BURUA

## Sakelako pantailari itsatsita bizi gara











aurkibidea



*Azaleko argazkiaren egilea: JoLynne Martinez



# AZAROAREN 25a

Azaroaren 25a emakumeenganako indarkeriaren kontrako eguna izan da eta jendeak kontzientzia hartzeko, Etxebarrin “mila eta gehiago” deitzen den kanpaina bat egin dute elkarte desberdinek (Inurtxi Etxebarriko Emakumeok, Etxebarri Siriarekin, Eskolako IGE) eta udalak.

Etxebarriko parkeetan, zuhaitzetan eta kale argietan esku moreak ipini dituzte. Barruan genero-indarkeriarengatik hildako emakumeen izenak eta adinak idatzita daude. Mila eta gehiago direlako, kanpainari 1000+ deitu zaio.

Kanpainaren helburua arazoa ikusgai jartzea izan da, batzuetan telebistan albisteak ikusten ditugu eta normaltasunez ikusten dugulako, arazoa gurea ez dela pentsatuz.

#1000+ erabili dute sare sozialetan gazteen artean kanpaina zabaltzeko eta gaztelekuetan brotxe moreak prestatu dituzte kalean banatzeko kanpaina azaltzeko.

Eskolan esku moreak ipini dituzte esaldi batzuk barruan idatzita: Indarkeria sexistaren aurka: maitasuna + hezkuntza.

## EMAKUMEEN AURKAKO INDARKERIARIK EZ!!

BOGAko ikasleak

*Zebarri aldizkaria honako erakundeei esker gauzatu da:*
















KULTURA SAILA
DEPARTAMENTO DE CULTURA




Ikerketa desberdinak kontua hartuta, frogatuta dago egun osoan mugikorrei itsatsita dauden gazteak ez direla zoriontsu bizi. Horrek dakarren eragin larriena eta handiena komunikazio falta dela esan beharra daukagu.

Gaur egun, oso normala da jendea mugikorrekin ikustea. Aldiz, orain dela 20 urte  ohiturak oso desberdinak ziren.

Lehen, eskuko telefonoa deitzeko erabiltzen genuen, baina orain mugikorrek interneta daukatenez, gauza asko egin daitezke, adibidez; informazio asko eskuratu dezakegu.

Oraingo sega-potoek izugarrizko boterea eta indarra daukate, hau da, ordenagailuen parekoak bihurtu dira. Hau, gure bizitzarako eta etorkizunerako aberasgarria da baina, hala ere, gehiegizko erabilera bat eginez gero, kaltegarria izan daiteke.

Egia da, umeak gero eta goizago hasten direla mugikorra erabiltzen. Hori dela eta, jaunartzearen opari izarra da. Umeen adina dela eta, gurasoek bere umeei sakelako bat erosteko adina hamabi urterekin izan beharko zelaren erabakietara heldu dira. Izan ere, gizarteak inposatutako erabaki bat izan daiteke.

Irakaskuntzari dagokionez, adin horrekin, institutora joaten hasten dira eta beraien ikasketa emaitzetan eta ikaskideen harremanetan  eragin larriak izan ditzake. Honekin lotuta, ikasketa eta ikerketa asko egon dira eta ondorioak argiak eta kaltegarriak dira, denbora gehiegi ematen da mugikorrekin eta horregatik izugarrizko menpekotasuna ageri da.

Pedagogoen esanetan, eskuko telefono bat edukitzeko adin komenigarriena 14 urtetik aurrera izango litzateke. Alde batetik, umeek mugikorra ez dute jostailu bezala ikusi behar. Kasu honetan, mugikor bat erabili behar badute heldu batek bideratuta egin beharko lukete. Horrez gain, mugak eta erabilera on baten arauak zeintzuk diren ondo azalduta eta finkatuta egon beharko litzateke.



Beste alde batetik, sega-potoen erabilerari erreparatuz,  denetarako erabiltzen direla esan genezake; lan egiteko,ikasteko, ikertzeko, musika entzuteko, erosketak egiteko, kotxerako GPS bezala eta horrelakoak.

Gurasoen segurtasuna kontuan hartuz, esan genezake, seguruago sentitzen direla beraien umeek mugikor bat badaukate. 24 orduak lokalizatuta daudelako, eta horrek gurasoei segurtasuna ematen die nahiz eta kontresanak egon, hau da, gurasoek beraien seme-alabekin adostuta dituzten mugen arabera. Adibidez, ume batzuk debekatuta daukate mugikorra astean zehar erabiltzea, beste batzuk astean bi egun, ...

Beharrezkoa den informazioa aztertzeko, elkarrizketa batzuk egin dizkiegu gure seme-alabei eta familiko gazteei, beraien sentsazioak eta pentsatzeko erak zeintzuk diren egiaztatzeko.

**Hemen, horien adibidetxo bat:** ➔

# ELKARRIZKETA



**1. Zer da mugikorra zuretzat?**

Niretzat denbora pasatzeko objetu bat da, mezuak bidaltzeko eta jolasteko da.

**2. Zertarako erabiltzen duzu?**

Komunikatzeko eta jolasteko erabiltzen dut.

**3. Zer nahiago duzu sega-potoa ala zuen lagunekin jolastea?**

Nire lagunekin jolastea, baina nire lagunak momentu askotan ez dira egoten eta horregatik mugikorra erabiltzen dut.

**4. Zure gurasoek erabiltzen dute? Zer iruditzen zaizu? Zenbat denbora?**

- Askotxo.
- Txarto iruditzen zait, izan ere, gutxiago erabil beharko lukete eta gurekin gehiago jolas lirateke.
- Egun osoa mugikorrekin daude.




Elkarrizketak aztertu ondoren, helduok hiru eta bost orduren artean mugikorra erabiltzen dugula ondorioztatu da, eta hori ez da eredu ona umeentzat. Nahiz eta ez konturatu, helduok orduak eta orduak ematen ditugu eskuko telefonoarekin. Ondorioz, hortxe legoke eraginaren oinarrietariko bat besteak beste.

Laburbilduz, konturatu gara, helduok gutxiago erabiltzen ahalengindu beharko ginatekeela eragin horren murrizketari hasiera emateko. Hortaz, pausuz pausu eta saiatuz eraginak gutxiezten lortuko dugula adostu dugu. Horretarako, gure ahaleginak egin beharko ditugu umeek ere gure joakerak zeintzuk diren ikus dezaten. Beti ere, zentzuzko erabilera egoki bat egiten.







ABANTAILAK



- Komunikatzeko.
- Lan egiteko.
- Kotxerako/GPS.
- Erosketak egiteko.
- Informazioa bilatzeko.
- Argazkiak eta bideoak egiteko.
- Ikasteko.

DESABANTAILAK



- Denbora galtzen da tontakeriak ikusten.
- Errepideetan istripu larriak.
- Askotan estresantea da, izan ere, dei eta mezu asko izan ditzakegu.
- Menpekotasuna.
- Bullying, isekak eta irainak interneten bidez.





# BIDEGORRIAK, HAINBAT IKA-MIKAREN SORBURU

Europatik Euskal Herrira aspaldi heldu ziren. Bizikleta-bide baten lehen metroak Gasteizen eraiki zituzten 50eko hamarkadan, txirrindulariek euren kirolik gustukoena segurtasun osoz praktika zezaten. Ordurik hona, Euskal Herriko zein herri edo hiri handik ez du bidegorririk bere kaleetan? Eta kilometro sareak ere gora egin du. Izan ere, txirrindularitzak predikamendu handia dauka Euskal Herrian. Hala ere, Europako herrialdeekin alderatzen badugu bizikletari ematen diogun erabilera, ikusiko dugu Europako zifrak haratago doazela. Holandako hiriburuan, adibidez, 800.000 biztanle daude, eta euretako % 63k bizikleta erabiltzen du egunero. Gurean, berriz, eta Gasteiz eredutzat hartuta, biztanleriaren % 12k baino ez.

Hastapeneko urte haietan bidegorria txirrindularientzat paradisuaren pareko lekua zen: inork oztoporik egiten ez ziela, kilometro dezente egin zezaketen, errepideetara jo beharrean. Gidariek ere eskertuko zuten bidegorriak egin izana. Baina, gaur egun bidegorriak kirola egiten dabilen jendez josita daude. Gure ustez, egiten



den bidegorrien erabilera ez da egokia. Eta hainbat arrazoik garamatza hori pentsatzera:

Lehenik eta behin, eta aurrean esandakoarekin lotuta, azken urteotan kirola egiteko zaletasun sutsua zabaldu da hiritarren artean: batzuek korri egiten dute, edo 'running' delakoa; beste batzuek, patinak erabiltzen dituzte; badira patinete elektrikoa hartu eta 'kirola' egitera kaleratzen direnak ere. Bidegorriak jendez lepo daude. Txirrindularientzat espresuki diseinatutako toki berean, bestelako erabiltzaileak aurki daitezke. Eta ondorioz, ezbeharrak gerta daitezke eta gertatzen dira. Azaroaren 26an DEIA egunkariak argitaratutako berrian bi txirrindularik salatzen zuten moduan, bidegorrien araudia ez da errespetatzen. ***"Bidegorriak erabiltzen ditugunok ere ez dakigu bidegorria nork erabil dezakeen"*** salatzen du elkarrizketatuetako batek aipatu albistean. Izan ere, bidegorriak ez dira oinezkoentzako, edozein hiritako bidegorrien Udal-araudiak adierazten duen moduan. Bidegorriak bizikletan dabiltzanentzako dira.

Beste alde batetik, berez, bidegorriek ondo eta era argian seinaleztatuta egon behar dute. Eta errail propioa izan behar dute bizikletariek, euren segurtasuna bermatu asmoz. Hori, benetan, horrela gertatzen da? Ezezkoan gaude. Bilboko Abandoibarra inguruan dagoen bidegorria ikusi baino ez dago, ez dagoela ondo seinaleztatuta ikusteko. Lurrean marka berde argiak izan beharrean, abangoardiak eta modernotasunari men eginda, lurrean metalezko txapa ia ikusezin batzuek mugatzen

dute erraila bi aldeetatik. Gain-gainean egonda ere, kostata ikusten dira.

Ahaztu behar ez dugun beste kontu bat bizikleta-bide haue-tan bizikletari batzuek eurek erabiltzen duten abiadura da. Bilboko Udalaren araudiak argi uzten du ezin dela 15 km/h-ko abiadura gainditu. Baina hori horrela gertatzen ez dela baieztatzen duten istripuen inguruko albisteak nahi baino sarriago irakur daitezke egunkarietan.

Azkenik, bidegorrien segurtasun eza erakusten duen beste arrazoi bat bidegorri batzuk nola eraikita dauden da. EL CORREO egunkariak 2019ko irailaren 25ean argitara emandako albiste batean Dimension Data taldeko Omar Fraile txirrindulari profesional salatzen duen bezala, ***'bidegorri asko eta asko estuak dira, eta bihurgune arriskutsudunak'.*** Beste batzuk, berriz, estuak izateaz gain, laburrak dira, edo brastakoan bukatzen dira, autoentzako errepide batekin lotura eginez. Bidegorri batek segurua izan behar du, bai txirrindularientzat, bai




oinezkoentzat ere. Nahiz eta azken hauek, ikusi dugun bezala, eta araudiaren arabera, ezin duten bidegorria erabili.

Arestian aipatutako guztia kontuan harturik, erabiltzaileen segurtasuna bermatu beharra dago. Hori bidegorriak era seguruan diseinatuz eta ondo ekipamendu egokia erabiliz baino ezin liteke lortu. Horretaz gain, hiritarrok bidegorrien erabileraren inguruko araudia ezagutu behar dugu. Erakutsi bezala, bizikletariek eurek ere ez baitaukate argi haiek bakarrik erabiltzerik duten edo ez. Horretarako, mugikortasun segururako heziketa eraginkorra eskaini behar dute erakunde publikoek. Gainera, bizikleta bide hauetan mota guztietako erabiltzaileak batzen direnez, guztiok gizalegez jokatu behar dugu, elkar errespetatuz.

Bukatzeko, zera azpimarratu nahi genuke: bidegorri-sare eraginkor baten beste funtzio bat eskualdeko hiri eta herriak elkarrekin lotzea izan behar da, Europan gertatzen den bezala. Bizkaiko Batzar Orokorrek berriki aho batez erabaki dute, adibidez, Bilbo, Erandio, Getxo eta Leioa lotuko lituzkeen bidegorri berri bat eraikitzea. Horrelako ekimen batek Etxebarrin gauza bi ahalbidetuko lituzke: batetik, eskualdea inguruko herriekin konektatzeak dakarren bizitasuna; eta bestetik, bizikletariek kilometro gehiago izango lituzkete hirigunetik kanpo, kirola praktikatzeko.



# BIDEGORRIA ERABILTZEN DUTEN TXIRRINDULARIENTZAKO AHOLKU OROKORRAK

Hona hemen Bilboko Udalak emandako aholkuak:

***Erabil itzazu ibilbide gomendatuak***

Bilbon bizikletan ibiltzeko bide bereziak edo ibilgailumotordunen zirkulaziotik bereizitako bidegorriak daude.Gainera, beste ibilbide gomendagarri batzuk ere badituzu: kale lasaietatik doaz eta, horri esker, joan-etorri luzeak egin ahal dituzu segurtasun handi samarrarekin. Bestetik, zure ibilbidea osatzeko, oinezkoentzako guneak edo zirkulazio murriztuko aldeak erabil ditzakezu. Hori bai, astiro joan eta kontuan izan lehentasuna oinezkoek dutela beti. Zure segurtasunagatik, ahal baduzu, erabili beti bidegorriak.

***Ondo ekipatuta joan***



Hirian ez da nahitaezkoa kaskoa erabiltzea, baina abiadura motelean oso eraginkorra da kolpeetatik babesteko. 13 urtetik beherakoek beti erabiltzea gomendatzen da. Izan zaitez ikusgarria. Onena jantzi argiak edo koloredunak eramatea da.

Gauez, aurreko eta atzeko argiak erabili eta islatzaileak jarri bizikletan eta arropan. Egoera onean eduki bizikletaren balaztak eta gurpilak. Bizikleta egunero erabiltzen baduzu, oso praktikoa da parrilla, saskia edo zorroak jartzea, edozer eramateko: maleta, erosketak, liburuak, jertsea...

***Aparkatzeko***

Jar ezazu giltzarrapo on bat, bizikleta lapur ez diezazuten. Komeni da gurpilak eta zela lotzea, koadroarekin batera, edo itxigailu azkarren ordez torlojuak eta azkoinak ipintzea.

Bizikleta beti leku eta ordu berean aparkatzen baduzu, lapurtzeko arriskua handiagoa da. Kasu horretan, komeni da motorzaleek erabiltzen dituztenen moduko giltzarrapoak erabiltzea.

Erabil itzazu Udalak jarritako aparkalekuak.



**AHOLKU OROKORRAK:**

- Izan adeitsua oinezkoekin
- Moteldu abiadura oinezkoak dauden eremuetan
- 15 Km/h ez gainditzea gomendatzen dugu
- Errespetatu trafiko-seinaleak
- Erabili zure eskuineko erraila
- Ez ibili trafiko guneetan autoen artean sigi-saga
- Egon ikusgai beste erabiltzaile batzuentzat

Iturria: Bilboko Udalaren Bizikleta Mailegu Zerbitzua (moldatua)

# GAZTEENGAN ETA NERABEENGAN HEDATU DEN IZURRITEA



Gizentasuna jatorri multifaktoriala duen gaixotasun kronikoa da. Giza gorputzean gantz gehiegi metatzen da eta gehiegizko pisua %20-25era iristen denean, egoera oso larria bihurtu daiteke. Gaur egun, gizartearen lehen mailako arazo kezkagarria litzateke, haurrek eta nerabeek bizi duten egoera latza baita. Hain zuzen ere, mutiletan %36 eta nesketan, berriz, % 21. Beraz, Euskal Herrian hizki larriz idatzi beharrekoa da; izan ere, oso kezkagarria da.

Euskal Herrian elikagaiez gozatzeko ohitura gehiegi jatearekin lotuta dago, gaixo jartzeraino zenbait kasutan. Hau da, plater azkarrak erosten ditugu guztiz sukaldatuak direnak, gure gustua zein plazera asetzeko. Horrez gain, faktore psikologikoak ere badira, besteak beste: ingurune obesitatea nagusi den gizartean bizitzeak gizentasuna eta gehiegizko pisua agertzea dakarkigu. Horren erakusgarria da “yoyo efektua”, hots, pisua galtzeko eta berreskuratzeko zikloari lotuta dagoena. Horrenbestez, egoera horretara iristen diren gaixoak errudun, lotsatuta eta gizartetik at sentitzen dira. Orobat, faktore genetikoak ere kontuan hartzekoak dira, geneak gorputzaren pisuaren %33 eragiten baitute.







Arestian aipatu bezala, gantzaren metaketa osasunerako oso kaltegarria da eta ondorioak uste baino larriagoak dakarzkigu. Gai horretan jantzita dauden adituen arabera, ohikoenak honako hauek dira: diabetesa, minbizia, gaixotasun kardiobaskularrak, etab. Horren ondorioz, urtero 2,6 milioi lagun hiltzen dira herrialde garatuetan, batik bat. Horregatik, berebizikoa da umetan ez ezik, helduaroan ere bizimodu osasungarria jarraitzea.

Ondorioak larriak direla aintzat hartuta, konponbideak premiazkoak dira. Alde batetik, elikadurari dagokionez, animaliengandik jatorria duten gantz handiko jakiak murriztea, besteak beste: gurina, esne osoa, gazta, okela gorria, hestebeteak... Horiek guztiak kontsumitu beharrean, fruta, barazkiak, lekaleak, arraina, zerealak eta karbohidratoak lekua izan beharko lukete gure dieta orekatuan. Bestetik, kirola egin beharra dago, nork bere pisu, altuera, osasun egoera eta jarduerara egokituta.

Bestalde, ezin dugu aipatu gabe utzi iragarkien fenomenoa. Bertan agertzen diren produktu miragarrietan ez genuke sinetsi behar, izan ere, behin behineko konponbideak baino ez dira. Horren ondorioz, pisua galdu nahi izatekotan, biderik egokiena osasun arloko aditu batengana jotzea da. Horrek guztiak funtzionatu ezean eta egoerak osasunari eragiten badio, azken konponbidetzat ebakuntza dugu.

C1 arratsaldeko taldea

$$IMC = \frac{Peso\ (kg)}{Estatura^2\ (m)}$$








# ETA GAURKO EGUNAK ZER JAI DU?

Aurreztu ahal dugu gastatuz? Jende askok baietz uste du eta Black Friday, Cibermonday eta Ezkongabeen Eguna aprobetxatzen du merkeago erosteko. Baina... egia izango ote da? Ala gezurra da? Galdera hori saiatuko gara erantzuten. Baina horretarako bakoitza zer den azalduko dugu lehenengo.




**Black Friday**-rekin hasiko gara. Gaur egun, Black Friday oso garrantzitsua da, baina gehienek ez dakite nondik etorri den. 1950ean Filadelfian hiritarrak kalera atera ziren eta erosketa asko egin zituzten; hainbeste jende zegoen non trafikoa ere kaotikoa izan zen. Poliziak ezin izan zuen Filadelfiako egoera kontrolatu; eta poliziak berak jarri zion gaur egun ezagutzen dugun izena, Black  Friday.




**Cibermonday**-rekin jarraituz, esan behar da, Estatu Batuetan hasi zela orain dela hamalau urte. Urtero, azaroaren 26aren inguruan, ostiralean, Black Friday hasten da eta asteburu osteko astelehenean izaten da Cibermonday. Amerikan ohitura da eta etorkizun oparoa du aurretik, erosketa egun hauek urteko handienetarikoenak bihurtuko baitira.

**11.11 光棍节**

Amaitzeko, **Ezkongabeen Eguna**.
Hau, azaroaren 11an ospatzen da eta Txinan agertu zen 90eko hamarkadan. Unibertsitateko ikaskideek asmatu zuten; hauek jai bat antolatu eta horri, horrela deitu zioten, Ezkongabeen Eguna. Enpresek (Abbaba, Aliexpress...) momentu hori berezia zela ikusi eta ezkongabeen "zoritxarra" aprobetxatuz, saltzeko erabili dute. Egun honen gainean egindako inkestek esaten dute jendeak bikotekiderik ez duenean gehiago erosten duela, horrela, pozik daudelako.

Orokorrean, bi kontu gertatzen dira egun hauetan:

Alde batetik, ikus daiteke gehienetan ez dauzkagun beharrak sortzen dizkigutela enpresek; eta askotan, jada baditugun gauza asko erosten dugu berriz ere, merkeago daudelako: mugikor berria, telebista handiagoa... Beraz, egun hauek kontsumismoarentzat dira eta jendeak kontrolik gabe egiten ditu erosketak; eta ez dira konturatzen beherapen gehienak iruzurrak direla.

Bestetik, egun horietan zehar erosketak eginez gero, enpresek iruzur egiten jarraituko digutela. Dena den, zentzuz eta ondo erosiz gero diru piloa aurreztuko duzula ere esan behar da; eta horretarako, hemen doazkizu gure aholku eta gomendioak:

**- Aztertu zure beharrak!**

**- Aurreko egunetan, erreparatu prezioei!**






# “LEHENIK, HEZKUNTZA ONDOREN, FORMAKUNTZA”

Konturatu gara herrian jende ugarik futbola praktikatzen duela. Horregatik, Oskar Fernandez, Etxebarriko futbol klubeko lehendakaria, elkarrizketatu dugu. Jarraian, klubari buruz eman dizkigun informazioa eta xehetasunak kontatuko dizkizuegu: zeintzuk dira taldearen historia, helburuak eta beharrak?, zer nolako formakuntza ematen die jokalariei?, nola lortzen dute finantzatzea? Zer harreman dute euskararekin?



## HISTORIA

Badira 65 urte Etxebarriko futbol taldea sortu zela eta, urte gutxi horietan, zelaia lekuz aldatu da, Patxi Bengoatik (orain Ortzi taberna dagoen lekutik) eliza atzeko partera. Aspaldiko zelaian jokatu zen lehenengo partiduan bi talde ospetsuk hartu zuten parte, Athletic Clubek eta Indautxuk. Egungo zelaian, Etxebarriko bi futbol taldeak entrenatzen dira. Urteek aurrera egin ahala, arlo guztietan hobekuntza eta funtzionamendu zehatzagoa eskatzen du egoerak.





## FORMAKUNTZA

Entrenatzaile eta teknikari guztiek tituludunak izan behar dute. Talde federatuetako entrenatzaileek, entrenatzaile titulua; Futbol Eskolako entrenatzaileek, begirale titulua.

Klubak gurasoen laguntza eskatzen du, baina ez kirolaren arloan; nahi duten laguntza da umeen heziketakoa eta, batez ere, formakuntzakoa. Entrenatzaileen lanean ez dute zertan sartu, lan egin dezaten utzi behar diete; eta umeei dakiten moduan jokatzen utz diezaietela, tartean sartu gabe. Oskarren ustez, umeak entrenatzeko edo partidak jokatzeko oso garrantzitsua da baloreak ikastea, gerora formakuntza on bat izateko. Lehenik hezkuntza, eta ondoren formakuntza.



## BEHARRAK

Alde batetik, klubak aldagela gehiago behar ditu taldeen behar guztiak asebetetzeko; gero eta jokalari gehiago dagoenez, ez daukate guztientzako lekurik. Horretarako, presidenteak proposatu du taberna kentzeko orain dagoen lekutik. Horrela, aldagela gehiago eraikitzeko aukera egongo litzateke, orain daudenen ondoan, gainera. Beraz, toki hori jokalarientzat, teknikarientzat eta zuzendaritzarentzat izango litzateke.

Beste alde batetik, antolakuntza ona izateko, jende gehiagok hartu behar du parte zuzendaritza-taldean. Hala ere, ez zaie gomendagarria iruditzen gurasoak zuzendaritza-taldean sartzea. Baina sartzen badira, karguak mugatuta izango dituzte.

Eta azkenik, herriko neska gehiagoren parte-hartzea handitu beharra du klubak. Duela bi urte jarri zuten martxan emakumezkoen taldea, baina hiru adinetako neskak daude nahasian.





## KIROL-HELBURUAK

Klubak helburu zehatz batzuk markatu ditu aurtengo denboraldirako. Batez ere, lehenengo eta bigarren taldeek igoera lortzea eta maila berreskuratzea; Gazteen A taldeak ere maila igotzea; eta Kadeteak maila mantentzea. Beste kategorien taldeen helburuak jokalari eta entrenatzaileen formakuntza eta heziketa da nagusiki.

Beste alde batetik, Oskarrek zuzendaritza utzi aurretik daukan ametsa Etxebarriko Lehen Taldea 3. Mailan ikustea da, nahiz eta ez duen oso eskura ikusten.

**ETXEBARRI KIROL ELKARTEA**

Sorrera:
**1954. urtea**

Lehenengo lehendakaria:
**Alejandro Bilbao**

Lehenengo entrenatzailea:
**Román Iragorri**

Zelaia:
**Etxebarriko udal futbol-zelaia**








## FINANTZIAZIOA

Gaur egun oso zaila da babesle berriek parte hartzea futbol elkartean. Beraz, lehendakariaren betebeharren artean dirua biltzea dago.

Eta nola ateratzen da dirua? Besteak beste, federatuak kadete izatera iristen direnean loteria saltzen hasten dira. Horrez gain, Etxebarriko Jaietan ipintzen duten txosna diru-iturri ona da. Horrekin batera, etxean jokatzen duten partidetan urdaiazpiko bat zozketatzen dute. Gainera, Udalak diru-laguntzak ematen dizkie, nahiz eta haien ustez nahikoak ez izan. Amaitzeko, publizitateari eta bazkide-karnetari esker ere lortzen da dirua.



## EUSKARA

Euskarari dagokionean, ahalegina egiten ari dira gero eta gehiago erabiltzeko, bai entrenatzaileen, bai jokalarien artean. Oraindik ez dute aurrerakuntzarik egin, baina datozen urteotarako erronka horri aurre egin nahi diote. Hala ere, pixkanaka ari dira euskara egunerokoan sartzen, eta jada sare sozialetan euskaraz ere sortzen dituzte albisteak. ZEBARRIren aldetik, espero dugu hurrengo elkarrizketan egoera oso bestelakoa izatea.

Egungo lehendakaria:
**Oskar Fernandez**

Egungo taldeak:
**seniorrak (2), gazteak (2), kadeteak (3), haurrak (4), kimuak (4), benjaminak (3), aurrebenjaminak (2), txikiak (1), emakumeak -adin nahasiak- (1).**

Jokalariak guztira:
**390-400**

Web gunea:
**sdetxebarri.com**

Bazkideak:
**200 inguru**

## EUTSI GOIARI!

Goizeko C1 taldea

# Zer egin gabonetan umeekin?



Gabonak hemen daude. Kaleetan argiak ikus daitezke dagoeneko. Horregatik, haurrekin Etxebarrin bertan egin ahal ditugun zenbait ekintza kontatu nahi dizkizue Zebarrik.

## LUDOTEKA

Etxean ume txikiak daudenean beste aukera daukagu: **GABONETAKO LUDOTEKA BEREZIA**.

Hara joan daitezke 2010etik 2014ra jaio diren umeak. Bi aukera daude:

• **Egun osokoa:** jantokiarekin, 9:00tik – 15:30era. Hau Barandiaran eskolan izango da.

• **Goizekoa:** 9:30etik – 13:00etara, Kultur Etxean izango da.

Bi aste daude, lehenengo txanda abenduaren 23, 26 eta 27an izango da eta bigarrena, abendua eta urtarrilaren 30, 2 eta 3. Txanda bakoitzak 40€ edo 15€ balio du, bazkaria barnean hartzearen araberakoa da.

Aurre inskripzioak egin beharko dira azaroaren 27a baino lehen.

**Jarduera ezberdinak egingo dituzte:**

• **Talde jokoak eta kooperatiboak**

• **Tailerrak**

• **Betiko jolasak**

• **Gorputz-adierazpena (antzezlanak, dantza, ...)**

Oro har, alternatiba oso ona izan daiteke.




## UDALETXEAK ANTOLATUTAKO IKASTAROAK

Etxebarrin Gabonetan gauza asko egiten dira eta zalantzarik gabe ikastaro desberdinetan parte hartzea aukera ezin hobea da ondo pasatzeko. Urtero Etxebarriko udalak gure etxetara bidaltzen digu Gabonetako egitaraua gure parte hartzea sustatzeko asmoz. Hauek dira aurten proposatzen diren zenbait ikastaro:




| |
|---|
| **Udal kiroldegian:** |
| **Abenduaren 13an, 20:00etatik 21:00etara.** Gazteentzako defentsa pertsonala ikastaroa dago. Izen ematea abenduak 8 baino lehenago izan behar du. |
| **Abenduaren 15ean, 09:30etatik 11:00etara.** Kirol ludoteka. |
| **Abenduaren 20an, 19:30etatik 21:30etara.** Gaboneko maratoia. |
| **Tarrastan:** |
| **Abenduaren 21ean, 17:00etatik 21:00etara.** Etxebarritarrok Santo Tomasera joateko aukera izango dugu, eta ziur nago primeran pasatuko dugula. |
| **Abenduaren 22an, 17:00etatik 21:00etara.** Familia txapelketa. |
| **Abenduaren 23an, 10:00etatik 13:00etara.** Posta-txartel lehiaketa |
| **Abenduaren 27an, 10:00etatik 13:00etara.** Gabonetako jaiak. |
| **Abenduaren 30ean, 10:00etatik 13:00etara.** Kanape tailerra. |
| **Urtarrilaren 2an, 10:00etatik 13:00etara.** Zinema tailerra. |
| **Urtarrilaren 3an, 10:00etatik 13:00etara.** Igerilekuetara joateko aukera izango dugu. |
| **Talka gazte gunea:** |
| **Abenduaren 27tik 29ra.** Gabonetako gazte bidaia Madrilera (3-4 DBH) |
| **Urtarrilaren 2,3 eta 3an.** Egitarau berezia (1-2 DBH) |

## ETXEBARRIKO PIN-A




Urtero bezala Gabonetako parkea (PIN) edukiko dugu.
**Aurten abenduaren 28 eta 29an kiroldegiko aurrealdean izango da.**

**Larunbatean**
Goizez eta arratsaldez egongo da zabalik, goizeko hamaiketatik eguerdiko ordu biak arte
(11:00-14:00), eta arratsaldekoa bostetatik zortziak (17:00-20:00) arte.
Aurten gauza berri bat edukiko dugu, larunbatean bederatzietatik hamaiketara (21:00-23:00) DJ Markelin abestera etorriko zaigu. DJ Markelek jotzen duen bitartean hanburgesa solidarioak jan ahal ditugu.

**Igandean**
Aurreko eguneko ordutegi berdina egongo da, baina oraingoan ez da DJrik egongo. Gune desberdinak egongo dira ekintza ezberdinak egin ahal izateko.

**HAUREN GUNEA 2-8 urte**. Ludoteka, puzgarriak, rokodromoa, pista amerikarra, ohe elastikoak, etab.

**GAZTEEN GUNE A 8-14 urte.** Formula bateko pista, air hockey-a, zezen mekanikoa, , arku-tiroa, Wii eta Play Station, etab.

Jende asko egoten den arren, merezi du umeek oso ondo pasatzen dutelako.
Gabonetako oporrak jende guztiarentzako dira, baina umeentzat gehien bat.

## GABONETAKO KALEJIRAK

Olentzero Nafarroako pertsonaia da. Pertsonaia mitologikoa da eta opariak ekartzen dizkie haurrei. Buru handia, gorputz gogorra, ikatzez zikinduta dago. Gabonetan, abenduaren 24an, alegia, Etxebarritik kalejira bat ospatuko da euskal mitologiako pertsonaia honen omenean. Izan ere, birritan igaroko da Olentzero gure kaleetatik, goizeko ibilaldiaren hasiera 11:00etan izango da Zintururi enparantzatik frontoira. Bertan jatekoa eta edatekoa egongo da. Jai hau oso garrantzitsua gure umeentzat eta primeran pasatuko dute.

**Arratsaldeko kalejira ordea, Kukuaren taldearen eskutik izango da. San Antonio parrokiatik Marivi Iturbe kalera joango da, arratsaldeko 17:15etik aurrera.**

**Hiru Errege Magoen kalejira, ondo dakizuenez, urtarrilaren 5ean ospatuko da. Jaitsiera 17:00etan hasiko da Etxebarriko Kultur Etxean eta 19:00etan bizkotxo banaketari ekingo diote frontoian.**

Espero dut informazioa hau lagungarria izatea eta Gabonetako oporrak bikain igarotzea.

ONDO PASA. ANIMA ZAITEZTE ETA URTE BERRI ON!

Goizeko B1 taldea

# Bada din, Bon Nadal!

Munduko toki bakoitzak ere ohiturak ditu. Gabonen inguruan ere bai, noski. ZEBARRIK herrialde batzuetakoak ekarri nahi dizkizue.



## GABONAK ASIAN



Gabonak Asian ez dira Europan bezala ospatzen. Indian Gabonak “Bada din” deitzen dira eta Santa Claus “Christmas Bada” da. Etxeetan kandelak ipintzen dituzte atarien ondoan eta zuhaitzen inguruan. Christmas Badak ez ditu opariak ekartzen, litxakerriak ekartzen ditu umeentzat.



Japonen, ordea, gehiago ospatzen da Urte Berria Gabonak baino. Urteko azken astean “Osoji” ospatzen dute. Familiak elkartzen dira etxea oso ondo garbitzeko, haien helburua barrutik sorte txarra ateratzea da.




Txinan Urte Berria Otsailan ospatzen daeta Txinatar guztiek dauzkate oporrak bere familiekin joateko. Munduko migraziorik handiena dela esaten dute. Urte bakoitza animalia batekin lotuta dago. Hurrengo urtea “Metalezko Arratoria”-ren urtea izango da.

## GABONAK ARGENTINAN

Argentinan, Gabonak hemen bezalako antza daukate. Bai Gabon Gaua eta baita Gabon Zaharra ere ospatzen dute, baina ezberdintasun handiena han uda dela da, beraz bazkaltzeko eta afaltzeko janari hotzak prestatzen dituzte, eta edateko xanpaina edo sagardoa batez ere.

Gabon Zaharrean ez dituzte mahatsak jaten hamabietako kanpaiekin. Argentinakoek, hamabiak pasa ondoren kalera joaten dira jaiara (gazteenak) edo etxean geratzen dira urte berria ospatzen.

Hori bai, kanpai ostean beti su artifizial ugari botatzen dituzte.



# KATALUNIAN nork dakartza opariak gabonetan?



Gabonetan kataluniara ez da joaten Olentzero opariak banatzera, Tió baizik.

Tió pertsonaia mistikoa da, irudikatuta enbor baten mouduan, aurpegi bat margotuta dauka, berretina bat jarrita  ere ( txano katalana tipikoa) eta estaltzen diote burusi batekin . Gabon gauan umeek makila batekin jotzen dituzten bitartean abesti magiko bat  abesten diote eta amaitzen dutenean agertzen dira opariak burusi azpian. Haiek esaten dutenez Tiók kaka egin ditu opariak.

Baina tradizio hau aintzinakoa da, eta ordutik hona asko aldatu da tradizioa. Egia da betidanik ospatu dela tradizio hau urtea amaitzerakoan, garai baten amaiera eta berriaren hasiera ospatzeko. Tradizio hau hasi zen kataluniaren herri txikietan eta  etxe gehienek berogailurik ez zeukatenez ospakizunetan enbor onena botatzen zuten tximiniara, eta gero errautsak barreiatzen zituzten zelaietatik. Haien sinesmena zen ritual horiek egin eta gero babestuko zitzaiekela

XVIII eta XIX mendean tradizioa zabaldu zen herritik hirietara eta Tiró garai hartan irudikatzen zen lo eginda zegoen naturari, eta horregatik pentsatu zuten, makila batzuekin jotzen baliote natura esnatuko zuketen  Horrela berragertuko litzateke natura emankorra eguraldi ona moduan.

Tradizio hau urte askotan desagertuta egon zen baina 60 hamarkadan nolabait aurpegia margotu esker,eta  tradizioa berreskuratzea lortu zuten orain arte.

# LATINOAMERIKAKO HERRIALDEETAN



Espainiako ohiturak daude Urtezahar-gaua ospatzeko. Adibidez, Perun ere 12 mahats hartzen dituzte urte berriari ongi etorria emateko, baina mahai baten azpian hartzen dituzte.

Baina hau bakarrik ez dute egiten; hartzen dituzte hiru patata. Zuritzen dute patata bat, beste patata bat uzten dute erdi zurituta, eta azkena zuritu gabe. Hiru patatak ohearen azpian jartzen dituzte eta begiratu gabe hartzen dute patata bat, nolakoa izango den urte berria jakiteko. Patata osoa zurituta badago, horrek esan nahi du etorriko den urtea diru-arazoekin etorriko dela, hau da, “estar pelado”. Erdi zurituta, diru-arazoak izango dituztela, baina ez da izango hain larria. Eta ateratzen badute patata zuritu gabe, urte berria oso ona izango da!



BOGAko ikasleak









# IPUIN MIX

**Ziur ipuin klasikoak goitik behera ezagutzen dituzuela. Ondorengo orrialdeetan, ipuin klasiko horietako batzuk hartuta, esperimentu zoro hau egin dute B2ko Kukullagako ikasleek.**

Behin batean, neska polit bat bizi zen herri txiki batean. Bere amonak kapa gorri bat oparitu zion eta beti eramaten zuenez, jende guztiak Txanogorritxo deitzen zion. Egun batean amak esan zion:

- Amonatxoa gaixorik dago. Pastela eta eztia eraman behar diozu, baina ez sartu basoan, han otsoa bizi baita.

Hau gertatu baino egun batzuk lehenago, herriko beste etxe batean arratoi batek txanpon bat aurkitu zuen bere etxeko ataria garbitzen zuen bitartean. Suposatzen zen txanpon honekin senar bat aurkituko zuela, baina ez zen horrela izan, inor ez baitzen bere gustukoa.

Egun eguzkitsu batean arratoi kaskarina basotik ibilaldi bat ematera joan zen, eta bat-batean Txanogorritxorekin topatu zen, azken honek amaren aholkua alde batean utzi baitzuen. Une hartan txanpon hura zertarako nahi zuen pentsatu zuen hau ez baitzen batere baliagarria berarentzat. Orduan Txanogorritxori eskaini zion.

- Kaixo Txanogorritxo! Txanpon hau nahi duzu? Nik ez dut ezertarako behar, eta agian zuretzat balio handiagoa izango du – esan zion arratoi kaskarinak.

- Bai, mesedez! Baina truke bat egingo dugu: txanpona emanez gero, nik begizta polit hau oparituko dizut – erantzun zion Txanogorritxuk.

Bi aldeak ados zeudenez, bakoitzak bere bidaiarekin poz-pozik jarraitu zuen, Txanogorritxok txanpon batekin eta arratoi kaskarinak begizta berriarekin.

Handik ez hain urrun, xirulari bat bere xirula jotzen ari zen. Musika polit-polita zen, Txanogorritxuk inoiz entzun zuen hotsik polita. Hori dela eta, hara joatea erabaki zuen, musika hori nondik zetorren eta nork jotzen zuen jakiteko. Hurbiltzerakoan, sagutxo asko korrika egiten ikusi zituen, txirulari bati jarraika. Orduan Txanogorritxok pentsatu zuen haiekin joatea. Baina una horretan, Txanogorritxuok gogoratu zuen bere amak esan ziona, amamaren etxera joan behar zuela. Hortaz, planak aldatu zituen eta amamaren etxerantz abiatu zen. Basotik joan zenean hiru txerrikumeak ikusi zituen korrika eta oihukatzen, haiengana hurbildu zen:

- Zer gertatzen zaizue? Zergatik zaudete hain urduri?

- Gure aitak etxetik kanpo bidali gaitu, orduan ez gara zer egin nahi genuen adosteko gai izan. Azkenean bakoitzak bere etxea eraikitzea adostu dugu - azaldu zuen txerri gazteenak-.

Nik lastoko etxea egitea erabaki dut oso erreza delako; nire nebak ordea, egurrezko etxea egingo du, eta neba nagusiak harrizko etxea egin nahi du hauskaitzagoa delako.

- Baina hori ez da hain urduri egoteko arrazoia. - esan zuen Txanogorritxok.

- Egia da, baina hori ez da guztia -esan zuen txerri nagusiak-. Gazteenak bere lastoko etxea egin zuen eta otsoa gose handiz etorri zenean, etxe aurrean jarri zen ondorengoa esaten: "Putz eta putz etxea botako dut". Orduan, ezusteko batean, etxea bertan behera erori zen.

- Eta gero zer gertatu zen? – galdetu zion Txanogorritxok jakin-mina handiz.

Txerriak istorioa kontatzen jarraitu zuen. Izan ere, otsoak txerri gaztearen etxea bota zuenean hau bere nebaren etxera joan zen korrika bizian bere etxean ezkutatzeko asmoz. Tamalez, otsoa honen egitasmoaz ohartu zenean, bere atzetik joan zen eta egurrezko etxearen aurrean gelditu zen eta berriz ere esan zuen otsoak:



- Putz eta putz eta etxea botako dut!!

Aurreko etxea baino pixka bat gehiago kostatu zitzaion botatzea, baina azkenean lortu egin zuen eta bi txerrikumeek ihes egin behar izan zuten otsoak ez harrapatzeko.  Hori dela eta, bi txerriak txerri helduaren etxera joan ziren.

- Eta zure etxea bertan behera bota zuen? – galdetu zion Txanogorritxok erantzuna jakiteko irrikan.

- Ez. Ez zuen nire etxea botatzea lortu. Ezin zuenez putz egiten etxea bota, tximiniatik sartzen saiatu zen eta orduan guk sua piztu genuen eta jaisterakoan isatsa erre zuen. Kar kar kar!

Txerriak eta Txanogorritxok barrezka hasi ziren eta behin elkarri agurtu zutela, bakoitzak bere bidea hartu zuen. Gure protagonista baso erdian zegoelarik, bi umetxorekin egin zuen topo.

- Kaixo! Nik Txanogorritxo dut izena eta amonaren etxera noa. Zuek nortzuk zarete? – galdetu zuen neskatxak.

- Gu Hansel eta Gretel gara eta anai-arrebak gara. Etxetik bota gaituzte eta basoan galdu gara, jatekorik al duzu? – galdetu zion Txanogorritxori anai-arrebatik nagusiena zirudienak.

- Sentitzen dut – erantzun zion-, baina saskian daukadana amonarentzat da. Gaixorik dago eta amak hura sendatzeko egin du janari hau. Halere, bidetik nentorrela txokolatezko etxe polit bat ikusi dut.

Bi umeak izugarri poztu ziren eta nola heldu ahal ziren galdetu zioten neskatxari. Behin bidea ezagutzen zutela, hainbeste gose ziren bi gazteak txokolatezko etxerantz abiatu ziren Txanogorritxori eskerrak eman eta gero. Azken honek bere bidearekin jarraitu zuen, baina igarri gabe, Edurnezuri eta zazpi ipotxak ikusi zituen lanetik bueltan.

Baziren urte asko Edurnezuri eta Txanogorritxo lagun minak zirenak, eta horregatik biak oso pozik jarri ziren elkar ikusi zutenean. Minutuak azkar-azkar igaro ziren eta ia konturatu gabe zerua iluntzen hasia zen. Dagoeneko, printze urdina heldu zen printzesari etxera joaten laguntzeko. Hortaz, bakoitzak bere bidetik jarraitu zuen.

Txanogorritxo bere basoko lagunekin topo egiten zuen bitartean, otsoa amamaren etxeraino heldu zen. Honek atea jo, etxean sartu eta hozkada batez amama jan zuen. Txanogorritxo bere helmugara heldu zenean, ez zen ezertaz ohartu eta otsoak bera ere jateko saiakera egin zuen, baina neska oihuka hasi zen. Une horretan, etxe aurretik printze eta Edurnezuri zeuden etxerako bidean. Garrasiak entzutean, birritan pentsatu gabe, printzea etxe barrura sartu zen eta bere ezpatarekin, kolpe bakar batez, otsoa hil zuen. Ezustekoan, Txanogorritxoren amona otsoaren sabelatik irten zen.

Sortu zen iskanbilaren ondorioz, amonaren etxean basoko pertsonai desberdinak agertu ziren. Hiru txerrikumeek fruituak ekarri zituzten, arratoi kaskarinak haragi errea, Hansel eta Gretelek gozokiak eta zazpi ipotxek edariak. Gainera, Txanogorritxok amamarentzat zekarrena ere partekatu zuen eta azkenik, Hamelingo xirulariak gaua alaitu zuen bere txirularen laguntzaz.

Gauza ederrak gertatu ziren sortutako jai horretan. Esate baterako, Txanogorritxok eta Hamelingo xirulariak musika talde bat sortu zuten eta handik aurrera ospetsu bilakatu ziren, Hansel eta Gretel eremuko gozogile hoberenak izan ziren, hiru txerrikumeek arkitektoak. eta ordutik aurrera, jende guztiari lagundu zioten etxeak eraikitzen, arratoi kaskarina zazpi ipotxekin bizitzera joan zen, Edurnezuri, ordea, baratzezain bilakatu zen eta bere sagarrak ederrenak ziren, eta azkenik, printze urdinak ezpata pintzelaren truke aldatu zuen eta erreinuko margolaririk ospetsuena izan zen.



**B2ko Kukullagako taldea**

# Galiziar Errezetak



Lotura handia du gure herriak Galizarekin. Aurten lekua eman nahi izan dio ZEBARRIk gure neba-arreben gastronomiari. Gozatu!

## GALIZIAR ENPANADA

### Orea egiteko osagaiak

| | |
|---|---|
| 450gr irina | 50gr ardo zuria |
| 50gr oliba-olioa | 50gr ur epela |
| 25gr lagami naturala | Gatz pixka bat |

### Barrukoa

| | |
|---|---|
| 3 tipula handi | 250gr tomate naturala |
| Piper berde bat | Atuna,okela,barazkiak...nahi duzuena |
| Piper gorri bat | |



**Prestaketa:**

Ura epeldu eta disolbatu legamia naturala. Ardo zuria, oliba-olioa, gurina, arrautza bat eta gatz pixka bat nahastu katilu batean. Mahai gainean irina bota eta sumendi forma emoiozue. Bota aurreko nahasketa eta orea egin ezazue. Bola bate gin eta estali zapi garbi batekin. Ordu bete utz ezazue, gutxi gorabehera.

Bitartean barrukoa prestatuMoztu piperrak eta tipulak zati txikietan, zartigana sutan ipini eta oliba-olioa bota. Lehenengo, tipulak biguntzen jarriko ditugu, tipulak zartaginera bota eta gatza egin, ondoren piperrak gehitu. 5-10 minutu sukaldatu.

Tomate naturala botas, ondo eragin eta gehitu atuna, okela... nagu duzuena. Hozten utzi.

**Enpanadaren forma egiteko:**

Orea bi zatitan zatitu eta luzatu. Zati baten gainean barrukoa bota eta veste zatiarekin estali. ASrrautza bat irabiatu eta horrekin orea pintatu. Labea aurretik berotu 180 gradutara eta orea labean sartu15-20 minutu.

# BICA GALIZIARRA

## Osagaiak

| | |
|---|---|
| 4 arrautza | 400gr irina |
| 300gr azukrea | Zorro bat legamia |
| 200gr behi-koipea | Limoi birrindura |
| 200gr esnegaina | Kanela hautsa eta azukrea (hautestatzeko) |



**Errezeta:**

• Labea aurretik berotu 180 gradutara

• Irina legamiarekin nahastu eta gorde nahasketa.

• Arrautzak,azukrea eta lagamia ontzian jarri eta irabiatu nahasketa zurixka eta apartsua geratu arte. Esnegaina eta limoia-birrindura bota eta irabiatu. Irina eta legamia ondo nahastu behar dira.

• Molde karratu bat laberako paperarekin forratueta nahasketa moldera bota.

• Kamela eta azukrea orearen gainetik hautseztatu.

• Labean sartu (beroa goian eta azpian) 40-45 minutu. Zotz batekin zulatu, begiratzeko eginda dagoen ala ez.

# GALIZIAKO ELTZEKOA

## Osagaiak

| | |
|---|---|
| Kilo bat garbantzu | Bi txerri belarri |
| Bi azaburu handi | Kilo bat lakoi |
| Bi txerri mingain | Ura |
| Kilo bat galiziako behi-okela | Gatza |
| Bi kilo patata | Olioa |
| Zortzi txorizo | |



**Errezeta:**

Bi egun lehenago sar ezazu lakoia uretan eta alda ezazu ura hamabi ordurik behin. Aurreko egunean sar itzazu garbantzuak uretan. Hurrengo egunean hozkailutik atera itzazu bi azaburu handi eta garbi itzazu, geroago ireki eta moztu buruak.

Zuritu eta moztu itzazu patatak, kazola batean bota itzazu garbantzuak eta azaburuak ur berotan. Beste lapiko baten mingaina,txorizoak,belarriak,lakoia eta okela sar itzazu.

Garbantzuek ordu erdi daramatenean patatak bota. Itxaro 45 minutu eta itzal itzau suak eta utzi ezazu 20 minutu. Ondoren nahas itzazu garbantzuak gainerakoarekin eta zerbitzatu plater handi batean eta zopa ontzi batean sar itzazu patatak eta azaburuak.

Hartu olioa eta gatza eta zerbitzatu, eta ahal delaardo gozo batekin.

**On egin.**

Langabetuen taldea

# DENBORAPASAK!

Aurkitu eskolan  egoten diren 11 hitz

| | | | | | | | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| M | A | H | A | L | A | E | L | S | A | K | I |
| A | Y | P | Q | L | U | T | R | K | P | R | R |
| H | R | A | I | A | R | S | I | A | A | B | A |
| A | Z | R | Y | L | U | Z | M | K | L | E | K |
| I | X | B | T | O | B | L | A | L | I | L | U |
| A | P | E | G | K | I | S | G | A | X | A | R |
| G | H | L | S | S | L | I | D | S | T | Z | R |
| U | T | A | M | E | N | T | O | E | O | T | I |
| N | Q | O | A | Q | L | K | I | A | M | I | B |
| A | M | U | L | A | L | O | B | D | U | P | T |
| K | O | A | D | E | R | N | O | A | K | A | A |
| C | S | P | K | E | R | R | E | G | E | L | A |

## DIFERENTZIAK

Aurkitu bi marrazkien arteko ezberdintasunak, eta ikasi haien izenak



## HITZETIK HITZERA

A — zure herrian bizi den pertsona

B — laukia ez dena

C — arropa egiten zuen emakume famatua. Prakak jarri zituen modan emakumengan.

D — erlojuan begiratzen duzuna

E — izar handiena

F — oinarekin jolasten den kirola

G — konkor bat duen animalia

H — Perez Sagutxoak biltzen ditu

I — eguzkia joaten denean ikusten duzu

J — josten duena

K — kantitatea neurtzen duen neurria da

L — laburra ez dena

M — hortzen artean dago

N — zer falta da? Udaberria, uda, udazkena, ............

Ñ — umea gaztelaniaz

O — otartekoa egiteko beharrezkoa da

P — itsusia ez dena

Q — gazta gaztelaniaz

R — tenisera jolasteko behar duzuna

S — usaintzeko erabiltzen duzu

T — etxe gainean dago

U — suhiltzaileek erabiltzen dute sua amatatzeko

V — belarririk gabe geratu zen margolaria

W — zuria gaztelaniaz

X — eskuak garbitzeko balio du

Y — arrautzaren gorringoa euskaraz

Z — gezurtia ez dena




## LOGIKA JOKUAK

**1. Danielek hainbat liburu ditu hizkuntza desberdinetan. Guztiak hiru izan ezin alemanez dira, guztiak hiru izan ezik italieraz idatzita daude, eta guztiak hiru izan ezik frantsesez. Zenbat liburu ditu gaztelaniaz idatzita?**

a. 4
b. 3
c. 2
d. 1

**2. Erloju batek bost segundotan sei aldiz jotzen badu, zenbat segundo behar ditu hamabi aldiz jotzeko?**

a. 10 segundo
b. 11 segundo
c. 12 segundo
d. 30 segundo
e. 60 segundo

**3. Zein da behar den pertsona kopuru baxuena familia batean aitona bat, amona bat, hiru seme, hiru alaba, bi ama, bi aita, amaginarreba bat, aitagin arreba bat eta errain bat egoteko?**

a. 10
b. 9
c. 8
d. 13
e. 15

**4. Ander, Jon eta Iñaki mahai borobil batean hitz egiten daude. Jon ez badago Anderren eskuinean, nor dago Anderren eskuinean?**

a. Jon
b. Iñaki
c. Ez dakit
d. A eta B

# ERANTZUN ORRIA

## *HITZETIK HITZERA*

A – auzoko- zure herrian bizi den pertsona
B – borobila – laukia ez dena
C – Coco Channel - arropa egiten zuen emakume famatua. Prakak jarri zituen modan emakumengan.
D – denbora – erlojuan begiratzen duzuna
E – eguzkia – izar handiena
F – futbola – oinarekin jolasten den kirola
G – gamelu – konkor bat duen animalia
H – hortza – Perez Sagutxoak biltzen ditu
I – ilargia – eguzkia joaten denean ikusten duzu
J – jostuna – josten duena
K – kilo – kantitatea neurtzen duen neurria da
L – luzea – laburra ez dena
M – mihia – hortzen artean dago
N – negua – zer falta da? Udaberria, uda, udazkena, ...........
Ñ – niño – umea gaztelaniaz
O – ogia – otartekoa egiteko beharrezkoa da
P – polita – itsusia ez dena
Q – queso – gazta gaztelaniaz
R – raketa – tenisera jolasteko behar duzuna
S – sudurra – usaintzeko erabiltzen duzu
T – tailatua – etxe gainean dago
U – ura – suhiltzaileek erabiltzen dute sua amatatzeko
V – Vincent van Gogh – belarririk gabe geratu zen margolaria
W – white – zuria gaztelaniaz
X – xaboia – eskuak garbitzeko balio du
Y – yema – arrautzaren gorringoa gaztelaniaz
Z – zintzoa – gezurtia ez dena

| | | | | | | | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| M | A | H | A | L | A | E | L | S | A | K | [illegible] |
| A | Y | P | Q | L | U | T | R | K | P | R | R |
| H | R | A | I | A | R | S | I | A | A | B | A |
| A | Z | R | Y | L | U | Z | M | K | L | E | K |
| I | X | B | T | O | B | L | A | L | I | L | U |
| A | P | E | G | K | I | S | G | A | X | A | R |
| G | H | L | S | S | U | I | D | S | T | Z | R |
| U | T | A | M | E | N | T | O | E | O | T | I |
| N | Q | O | A | Q | L | K | I | A | M | I | B |
| A | M | U | L | A | L | O | B | D | U | P | T |
| K | O | A | D | E | R | N | O | A | K | A | A |
| C | S | P | K | E | R | R | E | G | E | L | A |

## *LOGIKA-JOKUAK*

1. d) 1
2. b) 11s
3. c) 9
4. a) Jon

## *DIFERENTZIAK*

**BALTASAR**
Zapia
Luma
Bekain
Lepoa
Kutxa itxia
Kutxa irekia
Bizar leuna
Bizar kizkurra
Eskua
Eskularrua
Oparia

**GAMELUA**
Bitxia
Konkor
Hanka
Belarria
Mihia
MELTXOR
Bizarra
Belarri
Bibotea
Distiratsua
Koroa
Bihotza

**GABONETAKO OBJEKTUAK**
Gabonetako argiak
Gabonetako zuhaitza
Gozoki kainabera
Gabonetako bola
Txokolate etxea
Kandela
Gaileta jengibre
Hiru liburuak
Mihura

Arratsaldeko A1 taldea

KIROLA BORROKAN

Kiroldegietako langileen sektorea borrokan dabil orain dela 20 hilabetetik. Haien lan-hitzarmenak 20 urte baino gehiago ditu, eta aldaketa gutxi egin zaizkio denbora horretan. Azkena 2017ko abenduan sinatu zuten. “Langile eta sindikatuok uste dugu guztiz aldatu behar dugula” dio Iratxe Yugueros ordezkari sindikalak.

Haien eskaerak honako hauek dira:

- Soldatak igotzea ( KPI baino gehiago). Bizi-mailak gora egiten du etengabe , baina soldatek ez neurri berean.

-Ordu gutxiago lan egitea. 37 ordu egiten dituzte astean, eta 35era jaistea eskatzen dute.

-Monitoreen kasuetan, klaseak prestatzea ere ordain dezatela eskatzen dute, ez soilik saioak.

-Saioak 45 minutukoak izan arren, ordu osoa ordaintzea.

- Ordutegia dela eta, gau plusa ordaintzea, kasu askotan gaueko hamar eta erdietan edo hama.iketan amaitzen baitute .




***__Enpresa pribatuen kudeaketa__***

Udal kiroldegiez ari gara, baina kontuan izan behar dugu enpresa pribatuek kudeatzen dituztela. Etxebarriren kasuan ENTERSPORT da enpresa hori.

2018an hasi ziren bilerak egiten eta negoziatzen patronala eta sindikatuak. Orain arte, ordea, ez dute ezer lortu, hori dela-eta hasi ziren apirilean lanuzteak egiten. Azaroan, berriz, bi asteko greba deitu zuten. Sindikatuen arabera, patronalak eskaintzen dueña oso pobrea da , dena den,negoziazio mahaia berriz zabalduko dela diote.

***Zer diote erbiltzaileek?***

Greba guztietan gertatzen de bezala, erabiltzaileak kaltetuak izaten dira. "Nire semeak ezin izan dira joan igerilekura greba izan den bi aste horietan eta ikastaroa galdu egin dute. Horregatik kexa jarri dut kiroldegian, baina ez didate erantzun" diosku Anak. Beste erabiltzaile baten hitzetan: "Kokoteraino nago. Ulertzen dut langileen borroka, baina erabiltzaileak gara kaltetuenak. Urrian eta azaroan ez naiz apuntatu; izan ere, ez nekien zein egunetan egongo zen greba eta gimnasioa garestia da. Horregatik guztiagatik kexatu nahi dut"

***Zer egin dezake Udalak?***

Aitor Romeo udaleko kirol teknikaria da. Bere iritzia eman digu.

"Egoerak tristura sortzen dit. Kirola egitea, osasuntsu egotea, oso kontu garrantzitsua da. Enpresa eta langileen artean lan akordio batera ez heltzea penagarria da. Inori ez zaio gustatzen greba egitera heldu behar izatea"

Langileen eskaerei dagokienez, defektuz bidezkoak iruditzen zaizkio, ez baitu uste inork kapritxoei loturiko eskaerarik egiten duenik. Baina esan beharra dago enpresek ere badutela etekin ekonomikoa izateko eskubidea, eta hor oreka lortu behar da.  Galdera bat botatzen du: Prest al gaude herritarrok langile horiek duin egon daitezen eta enpresak bideragarri izan daitezen zerbait egiteko? Kuota altuagoak ordaintzeko?

Lehen aipatu dugun moduan, EMTESPORT enpresak kudeatzen du Etxebarriko kiroldegia. Bertan 35 langilek egiten dute behar, eta erabiltzaileak 3000 inguru dira.

Ordezkari sindikalak adierazi digunez, udalak ezin du ezer egin. Enpresa horrekin sinatua  duten kontratua beste zortzi urterako da, bertan daude baldintzak ezarrita eta sinatuta.

Horregatik eskatu dute bitartekaritza, izan ere, ez Etxebarriko udalak ez besteek ez dute eskumenik konponbidearen bilaketan.

Bitartean, erabiltzaileei begira, 2020ko kuotetan deskontua egingo zaie uda baino lehenagoko greba egunengatik.

Ea auzi hau guztiontzat ahalik eta ondoen konpontzen den!



# ETXEBARRIKO EUSKALTEGIA

2019 / 2020

Piztu zure euskara

Enciende tu euskera

94 426 28 02

euskaltegia@etxebarri.eus

www.etxebarrikoeuskaltegia.com




 etxebarrikoeuskaltegia  @etxebaeus

ulibarri
euskaltegia



